**-EKONOMIA**: Baliabide urriak kudeatzean datzan gizarte zientzia:

Mikroekonomia: Banakako aldagaiak erabiltzen dituen ekonomia.

Makroekonomia: Aldagai orokorrak erabiltzen dituen ekonomia.

Mesoekonomia: Mesoekonomia mikroekonomiaren eta makroekonomiaren arteko erdiko baten mailan ematen da. Mesoekonomian hurrengo faktoreak aztertzen dira: garraioa, komunikazioa, merkataritzaren gaineko araudiak, energia hornidura eta probintzi eta regio mailako politikak.

Metaekonomia:

-Merkatua: Ondasun eta zerbitzuak, baita ekoizpen faktoreak (lantegietan kontsumitu egiten direnak) saltzeko edo trukatzeko erabiltzen den gizarte erakundea.

-Ekonomia bi motakoa izan daiteke (gaur egun bi mota horien arteko nahaste bateranz doa merkatua):

Kapitalista: Merkatu librea.
Sozialista: Estatuak du kontrola

-Erosteko arrazoiak (6):

| | | |
|---|---|---|
| Beharra (erabiltzeko) | Luxua | Ospea |
| Trukatzeko | Gizarte helburuak | Eutsigarritasuna |

## MIKROEKONOMIA:

-Prezioa:

Eskaera: Prezio zehatz bat egonda zenbat kontsumituko den.

Eskaintza: Prezio jakin baten truke merkatuko eskariari erantzuteko ezartzen den ondasunen eta zerbitzuen multzoa.

-Eskaera

Kontsumitzailearen nahiak:

Modak
Joerak
Beldurrak

Errenta

Behe mailakoak (Errenta gutxikoek erabiltzen dituzte, produktu txarrak izan ohi dira)

Arruntak

Oinarrizkoak (Ogia, Arropa...)
Luxuzkoak

Beste ekoizkinen prezioak

Ekoizkin ordezkagarriak
Ekoizkin osagarriak

**ESKAERA ETA ESKAINTZA:**



-Eskaintza:

Erabilitako teknologia

Kalitatea handitu (eskaera -)
Kostua murriztu, eskaitza kurba mugitzen da -->

Ekoizpen faktoreen prezioa

Laneskua
Energia
Makinaria
Lantegia
Lehengaiak

Lurra

-Eskaera motak:




Eskaera zurruna (oinarrizko produktuek izan ohi dute): Nahiz eta prezioa asko igo eskaera mantendu egiten da (eragin txikia du prezioak eskaeran).

Eskaera malgua (luxuzko ondasunak): Prezien igoerak oso eragin handia du eskaeran.

## MAKROEKONOMIA:

Erakusleak; Politika ekonomikoaren xedeak; Politika ekonomikoaren bitartekoak

-Erakusleak:

**BPG** Barne Produktu Gordina: Estatuak bere osotasunean zenbat kokntsumitzen duen. Bi hiruhilabete jarraian behera badoa krisialdia dagoela esaten da.

**Inflazioa** Prezioen etengabeko gorakada kalkulatzeko “indikadore” batzuen prezio aldaketa ikusten da:

| | | |
|---|---|---|
| Ekoizkin freskoak | Ez elaboratuak | Arropa eta oinetakoak |
| Energetikoak | Etxegintza | Elikagaiak |
| Tabakoa eta alkohola | | |

Bakoitzari bere garrantzia ehunekotan emanda eta guztiak gehituta kalkulatzen da inflazioa.

Azpiko inflazioa:
Deflazioa:Prezioen etengabeko beherakada.

**Aurrekontu defizita:** Estatuak dituen sarrerak-gastuak <0 izatea.
Aurrekontu superabita: Estatuak dituen sarrerak-gastuak >0 izatea.

Apurtxo bat azaltzea falta da hemen.

**Ordainketa balantza:** Herrialde baten Inportazioak-Esportazioak.

**Euriborra:** Diruaren prezioa (diru maileguetan bankuek ordaintzen duten interesa +o-)

**Petroleo upela:** Inflazioan eragin handia du, baita BPG-aren hazkundean.

-Ekonomia Politikaren Xedeak edo Helburuak: Enplegu osoa, Prezio egonkortasuna, Kanpo merkataritzaren oreka, Ekonomia hazkundea, Errenta banaketa, Ongizatearen gizartea, Eutsigarritasuna.

**Enplegu osoa:**

%5eko langabazi tasa kontsideratzen da enplegu osoa, langabezia beharrezkoa da hazkunde ekonomikoa bermatu egin ahal izateko

Urte sasoiko langabezia (garagardotegiak, hondartzako hotelak...)

Egiturazko langabezia (pertsona nagusiek lana galtzen dutenean eta teknologikoki desfasatuta egotearen ondoriozko langabezia)

Tirabirazko langabezia (behar den pertsona kontratatzen behar den denboran zeharreko langabezia (normalean ekonomia ondo doanean ematen da))

Ezkututako langabezia administrazioak jendea kontratatzen ezkutatzen duen langabezia (sei bedel edukitzea, hondartzainak etab).

**Prezio Egonkortasuna:** Inflazio altua egotekotan --> Desoreka --> Deflazioa (inflazioaren ondoren).

**Kanpo merkataritzaren oreka:**Esportazioak > Inportazioak. Horretarako inportazioei oztopoak jartzen zaizkie barne jarduera trebatzeko (arantzelak, tasak..)

**Ekonomia hazkundea:**

Etengabeko estatuaren hazkundea bilatzea.

**Errentaren banaketa:** Errenta antzekoak egotea, klaseen arteko banaketa txikitzeko,

delinkuentzia ekiditzeko. (IRPF erabili egiten da errentak banatzeko)

**Ongizatearen gizartea:** Zerbitzu minimo batzuk jende guztiari ziurtatzea:

Osasun sistema publikoa

Hezkuntza sistema publikoa

Pentsio sistema publikoa

Elbarrituen gizarteratzea

**Eutsigarritasuna:** Gure gaurko bizitza motak gerokoen bizitza maila ez zapuztea.

Ekodiseinua

-Ekonomia politikaren helburuak lortzeko bitartekoak:

**Zergak:**

Nola bildu:

Elkarteen gaineko zerga: Banatzailea da, ondo doazen enpresek ordaintzen dute soilik.

Desgrabazioak:
Ingurugiroa zaintzeko proiektuak: %5
Energia aurrestu %5en
I+G
Internazionalizatzea
Elbarriak kontratatu 3607€ bakoitzeko

Tabakoak, alkohola, erregaiak... zerga asko ordaintzen dituzte, osasun sistema publikoa ordaintzeko.

Zertan gastatu:

“Plan E” Azpiegiturak egitea, langabezia gutxitzeko. Alde batetik, langabezi gutxiago eta zerga gehiago eta beste aldetik estatua modernizatu egiten da.

Gastu soziala.

**Moneta:**

Euroa --> Parekotasuna (esportazio eta inportazioen kontrlola lortzeko).

Euriborra jeitsi(krisialdia dagoenean): Inbertsioak sustatzeko, ez du pena merezi dirua bankuan gordeta izateak, ez baitu ia interesik ematen.

Euriborra igo (ekonomi egoera ona denean): Banketxeak diru gehiago ematen digu dirua gordeta edukitzeagatik, hortaz dirua gordetzen dugu eta kontsumoa ez da sustatzen, horren ondorioz, inflazioa kontrolatu egiten da.

**Maileguak:** Estatuak parte hartzen duenean

Hartzaile: Aurrekontu defizita dagoenean: Bonoak eta Obligazioak.

Emaile: Hazkundeekonomikoa bermatzeko: Enpresak, Jarduera Berriak, I+G

Kanpo zorra

**Kontrol Zuzena:**

Mugak- Etorkinak:

Erregularizazioak, behar direnean.
Etorkinak behar ez direnean joateko abantailak eman: Langabezia guztia ordaindu.

Inportazio-Esportazioak:

Esportatzaileei laguntzak eman:
Inpnortazioei: Arantzelak, mugak (tasak)

Prezio batzuk kontrolatu egiten dira.

**Politika aldaketa:**

Pribatizazioa.

Liberalizazioak.

## <u>KONTABILITATE OROKORRA</u>

**Balantzea** --> Abenduaren 31:

-Aktiboak: Makinak, lurrak, baimenak, agiriak...

-Ondare garbia eta pasiboak:

Ondare garbia jabeak enpresan sartutako dirua, enpresa sortzeko... epe luzerako egongo da diru hori enpresan.
Pasiboak bankuak emandako dirua, beste enpresa batek utzitakoa... dira, zorrak dira.

**Galdu-irabazien kontua**

Urte oso batean, jarduera ekonomikoen bitartez zenbat diru galdu edo irabazi egin duen enpresak. 2009 ekitaldia (batzuk hiruilero egiten dute). Enpresak berak sortu egiten duen aberastasuna. Diru iturri bat da eta ondare garbian sartzen da.

XII-31 ekitaldia itxi --> VI-30 Gauzak prestatu -->VII-25 erregistroa

-Zuhurtasun hastapena --> Zuhurtasunez jokatu, beti egoera txarrenean jarri.

Sarrerak gauzatutakoan kontutan hartu (faktura eginda dagoenean).
Galerak susmoa dagoenean.

-Sortzapen hastapena --> Nahiz eta diru mugimendurik ez egon. Fakturatutakoa kontabilizatu.

-Onura eta gastuen korrelazioen hastapena.

-Amortizazio teknikoa: Nola kontabilizatu egiten ditugun aktiboak adibidez eraikina edota pabilioia.

Adibidea:

Demagun $6.10^6$ €-tako pabilioia erosi egin dugula. Ez dugu pabilioia gastu moduan hartuko baizik eta inbertsio modura. Hori dela eta ez dira agertuko 6 milioiak gastu bezala. Hori egin beharrean, pabilioiak zenbat urtetarako baliogarria izango zaigun kalkulatu egingo dugu eta pabilioiaren balio osoa urte kopuruarekin zatitu egingo dugu zatiketa horren emaitza gure gastuak izango dira pabilioia iraungo duela kalkulatu egin ditugun urte guztietan. Pabilioiak urte gehiago irauten baditu, ez ditugu urte horietan gastuak apuntatu behar, izan ere guztia eginda dago.

-Narrioa: Ezbeharrak edo istripuak (konpondu egin daitezkenean).

| | |
|---|---|
| Makineria | --> $10.10^6$€ |
| Amortizazioa | --> $1.10^6$€ |
| Narrioa | --> $2.10^6$€ |
| Balio kontablea | --> $7.10^6$€ |

Hornidura: istripu edo matxura bat konpontzeko beharko den dirua (etorkizunean). Istripua edo matxurra gertatzen denean kokntabilizatu egiten dugu, eta pasatu edo motz geratu egin bagara, gero konpondu egiten da, hau da (hornidurak multak, kutsatzeagaitik, langileak estafatzeagaitik... izan daitezke):

Hornidurak ezkorregiak baziren, galdutakoa kenduta, sobratzen dena irabazietan jarri.

Zuzen bageuden, ez da ezer ez gehitzen ez kentzen.

Baikorregiak baziren, diferentzia galdu.

**Aktiboa:**

Aktibo zirkulagaitzak: zirkulatzen ez diren aktiboak dira, gure enpresan epe luzean geratu egingo direnak:

Ibilgetua --> Helburua lortzeko bitartekoak.

Inbertsioa--> Helburua lortzeko ez direnak, erabiltzen ez diren eraikin edota lurrak...

Jarraian aktiboak likideziaren funtzioan jarrita agertzen dira (hasieran diru bihurtzeko zailagoak direnak...):

I Ibilgetu ukiezina:

Garapena, I+g+b (Ikerketa+garapena+berrikuntza)
Patenteak, baimenak, markak
Merkataritza funtsa (saldu egin diren enpresetan soilik, enpresaren ospea, bezeroak...)
Aplikazio informatikoak
Beste ibilgetu ukiezina.
5 urtetan amortizatu egiten dira (aplikazio informatikoak 3 urtetan).

II Ibilgetu materiala

Lurrak eta eraikuntzak (30 urtetan amortizatu egiten dira).
Instalazio teknikoak eta beste ibilgetu materialak (5, 10, 15 urtetan amortizatu egiten dira).
Ibilgetu arinbideak eta aurrerakinak (arinbideak egiten ari garen eraikina, adibidez eta aurrerakinak lan bat egin aurretik aurreratu egin behar dugun dirua, materialak etab erosteko).

III Ibilgetu inbertsioa:

Lurrak eta eraikuntzak ekoizpen prozesurako erabiltzen ez baditugu.

IV Taldeko eta elkarkidetzako enpresetan epe luzerako inbertsioa:

// UTE union temporal de empresas, taldeko enpresak %50 baino gehiago dugunean
//elkarkidetzakoak %20

Ondare baliabideak
Maileguak

V Epe luzerako inbertsio finantziarioak:

Ondare baliabideak
Maileguak

AKTIBO ZIRKULAGARRIA: (enpresara etorri eta epe laburrean joan egiten dira).

I Izakinak (lehengaiak, ekoizkinak):

1 Lehengaiak eta beste horniketak
2 Ekoizkinak arinbidean
3 Ekoizkin burutuak
4 Azpiproduktuak, hondarrak eta gai berreskuratuak
5 Hornitzaileei egindako aurrerakinak

Azalpena (Lehengaia, ekoizkina , azpiproduktuak, hondarra eta gai berreskuratuak):

Lehengaia gure ekoizkina (produktua) egiteko behar ditugun materialak dira. Ekoizkina gure produktua da, azpi produktua gure ekoizkina egitean sortu egiten diren eta guk nahi ez ditugun gauzak dira (demagun zirindolak(arandela) egiteko enpresa bat dugula, barruko zuloa norbaitentzat interesgarria izango balitz, zuloa azpiproduktu bat izango litzateke). Hondarra inork nahi ez duen soberakinaa da eta gai berreskuratua prozesu baten bidez hondarra erabilgarri egitean lortzen dugun gaia da adibidez, soberakinak berriro urtuz, zirindola egiteko behar dugun txapa moduko txapa bat lortu egingo bagenu, txapa hori gai berreskuratua izango litzateke.

II Merkataritza zordunak eta kobratzeko beste kontuak: (Enpresari dirua zor diotenak)

1 Salmenta zerbitzuengatiko bezeroak
2 Bezeroen, taldeko eta elkarkidetzako enpresak
3 Zordun anitz (normalean gurekin lanik egiten ez dutenak)
4 Langileak

Ordainketa etendura --> Hartzekodunen leihaketa

Bezeroa den eta zorrak dituen enpresa batek ordainketa etendura egiten badu, bezeroen narrioak egongo dira.

III Eskudirua eta beste aktibo likido baliokideak

1 Altxortegia

ONDARE GARBIA ETA PASIBOA:

Ondare garbia:

Galdagarritasunaren(galdagarritasuna:zenbat aukera dugun diru hori hartzeko) funtzioan jarrita (gutxiagotik gehiagora):

Funts berriak

I Kapitala (enpresa martxan jarri egiten den dirua (SL 3000-60000 SA 60000-infinito))
II Erreserbak (enpresak legez gordeta eduki egin behar duen diru kopuru bat, badaezpada)
III Beste ekitaldietako emaitzak
  1 Geldikina
  2 (Beste ekitaldietako emaitzak) <- kako artean dagoena kontabilitatean negatiboa da.
IV Ekitaldiko emaitzak

Pasibo zirkulagaitzak:

I Epe luzetarako hornidurak (langileak, ingurumena...)
II Epe luzerako zorrak
  1 Kreditu erakundeekiko zorrak

Pasibo zirkulagarriak:

I Epe laburrerako hornidurak
II Epe laburreko zorrak

  1 Kreditu erakundeekiko zorrak
III Merkataritza hartzekodunak eta ordaintzeko beste kontuak:

  1 Hornitzaileak
  2 Hornitzaileak, taldeko eta elkarkidetzako enpresak
  3 Hartzekodun anitz
  4 Langileak
  5 Bezeroen aurrekinak

Mailegu baten adibidea: Mariñela EM-ak (elkarte mugatuak) 2001eko abenduaren 31n mailegua jasotzen du ICOk emanda (Instituto de credito oficial). Maileguaren zenbatekoa 500.000 euro da, 7 urtetan ordaintzekoa baina 2 urteko ezunea (ez da akitapenik ordaiindu egin behar baina korrituak berdin berdin ordaindu egin beharko dira)egongo da. Urteko korrituak urteko %4koak dira eta ordainketak urte bakoitzeko azken egunean gauzatzen dira. Ondorengo taula bete, enpresaren kontabilitatean jazotako eragiketak ipiniz.

| | Balantzea | Balantzea | Urteko GIK | Ordainketa | Ordainketa | Ordainketa |
|---|---|---|---|---|---|---|
| Urteak | epe luzerako m | epe labur m | Finantza em. | KUOTA | KITAPENA | KORRITUAK |
| 2001 | 500 000 | - | - | - | - | - |
| 2002 | 500 000 | - | 20 000 | 20 000 | - | 20 000 |
| 2003 | 400 000 | 100 000 | 20 000 | 20 000 | - | 20 000 |
| 2004 | 300 000 | 100 000 | 20 000 | 120 000 | 100 000 | 20 000 |
| 2005 | 200 000 | 100 000 | 16 000 | 116 000 | 100 000 | 16 000 |
| 2006 | 100 000 | 100 000 | 12 000 | 112 000 | 100 000 | 12 000 |

| | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|
| 2008 | - | 100 000 | 8 000 | 108 000 | 100 000 | 8 000 |
| 2009 | - | - | 4 000 | 104 000 | 100 000 | 4 000 |

Kitapena: Zor dugunari zuzenean kentzen zaion diru kopurua.

Korrituak: Ordaindu egiten ditugun interesak (diruaren prezioa).
Epe laburrerako mailegua: hurrengo urtean itzuli egin beharko dugun zorra.
Epe luzerako mailegua: hurrengo urteotan ordaindu egin beharko dugun zorra(hurrengo urtekoa eta aurtengoa kenduta).

GALDU IRABAZIEN KONTUA:

1 Negozio zifraren zenbateko garbia == fakturazioa
2 Bere aktiboari enpresak berak egindako lanak (makina enpresan bertan egin).
3 Horniketak
    Lehengaien kontsumoa eta kontsumitutako beste gaiak
    Narrioak
4 Langileen gastuak
    Soldatak, lansariak eta antzekoak
    Gizarte-zamak
    Hornidurak (denuntziak... direla eta)
5 Ustiapeneko beste gauzak
    Merkataritza eragiketak sortutako narrio, galera eta hornidura-aldaketak
6 Ibilgetuaren amortizazioa
7 Hornidura ezkorregiak
8 Ibilgetuaren narrioa eta besterenganaketa (ibilgetua saldu egiten denean) emaitza
    Narrio eta galerak (galera!=narrioa galera betiko galduta da)
    Besterenganaketa emaitza=Amortizazioa +narrioa+salneurria-balio kontablea (positiboa bada irabaziak eta negatiboa bada gastuak)
A.1 USTIAPENEKO EMAITZA (lehenengo 8en batuketa).
9 Finantza-sarrerak
10 Finantza gastuak
A.2 FINANTZA EMAITZAK (9+10)
A.3 Zerga aurreko emaitzak (A1+A2)
11 Mozkinen gaineko zergak
A 4 Ekitaldiko emaitza.

ELKARTEEN GAINEKO ZERGA:

Zerga aurreko emaitza(ZAE)
Oinarri kengarria=ZAE-Emaitza negatiboak

Kuota likidoa (ordaindu egin beharreko zergak ezer desgrabatzen ez baldin bada):
    ETE (enpresa txiki ertaina) %24 baldintzak: {fakturazioa<$24.10^6$€, Langile kopurua<250, Ibilgetu garbia<$12.10^6$, enpresa haundi baten menpe ez egotea (enpresa haundiak akzioen

%25 baino gutxiago)}

Enpresa handiak: %28

Desgrabazioak:

Desgrabazio mugadunak edo bigarren mailakoak (ezin dute kuota likidoaren baino %45 gainditu gainditzen badute, zerga mailegua gelditzen da, 15 urterako gorde egiten da mailegua):

Aplikazio informatikoak %10
Ibilgetu material finkoa (makinaria...) %10
Interneti lotuta dauden gastu guztiak %10
Energia aurrezteko proiektuak %15
Ingurumena zaintzeko proiektuak %15

Desgrabazio mugagabeak:

I+G+b (Ikerkuntza garapena eta berrikuntza): %30 azken bi urteetako batazbestekoa gainditzen duenak %20 gehiago desgrabatzen du.

Elbarrituentzako lanpostuak sortzeagatik 3606,07€ lanpostu berri bakoitzeko.

## KOSTU KONTABILITATEA:

Gastuak: Ordaindu egiten den guztia.
Kostuak: Produkziorako erabiltzen diren gastuak.
Ordainketa: Zorra dugunean ordaintzea (diru korronte fisikoa).
Kobrantza: Ordainketaren aurkakoa (zorra guri ordaintzea).
Inbertsioa: Kosturik ez duen gastua (10 makina erasi eta 8 bakarrik erabiltzen baditugu bi inbertsioa izango dira).
Gastuak ez diren kostuak: Aukera kostuak (inbertsiorik onena ez egiteak duen kostua). Jabeak musutruk lan egiten duenean.

Kostu motak:

-Kostu zuzena: Ekoizkinari zuzenean erlazionatu egin ahal zaio (erregaia, matxurak...).
-Kostu ez zuzena: Ez dauka lotura zuzenik ekoizkinarekin (enpresako idazkaria...).

-Kostu aldakorrak: Produkzioaren menpekoak dira (erregaia, matxurak).
-Kostu finkoak: Ez dute menpekotasunik produkzioarekiko (makineriaren amortizazioa...).

Kostua guztira: $K_G = K_F + K_A$
Salmentak: $P = p \cdot x$
Kostu aldakorraren tg: $tg\,\theta = \frac{K_A}{X}$

